## San Balendin. Otsailaren 14: (¿240?-†270)



**Sarrera-oharra (Ohargileak)**

Ezer gitxi jakin daiteke santu III. gizaldiko honi buruz. 270. urterantza lekutzen da bere martiritza. Leiendaren arabera, enperadore Kaludio II.aren aldietan atxilotu eben, gizonezkoak gerrarako behar izanik ezkontzea galazota egon eta Balendinek ezkutuan bazan ere ezkondu egiten zituala-eta. Kartzela zainak bere alaba itsua honen irakatsiak hartzen jarri eban eta sinismena besarkatu eban haren irakatsiei esker, eta somau eban begietara argitasuna etorkola. Hurrengo egunean samea moztu eutsoen eta santa Praxedes eleizan emon eutsoen lur. Ezkondu bizitza eroan gura dabenen zaindaria dogu.

**Abestia**

*Goazen alkarturik, biztuta fedea,*
*argitan zabalik maitasun-bidea.*

Gurekin dogu Maisu ta lagun, gurekin dogu, gurekin Jauna;
egin dagigun apaltasuna ta maitasunez haren esana.

**Abadearen agurra**

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.

† Alkarren zerbitzurako nahi gaituen Jainko Aitaren grazia ta bakea zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Damu otoitza (**abadeak**)**

Esaten dogu, bai, agirian, geurekoiak garela; baina ez gara gauza Jainkoaren aurrean autortzeko gure pekatu hori, eta gitxi erein ta ugari batu nahi izaten dogu. Hurreratu gaitezan erruki iturrira; autortu daigun Jainkoaren aurrean

gure pekatua.

—Jesus Jauna: pobreenak izan dozuzana zeure lagun, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna: alkarren zerbitzuan eta maitasunean ikusi nahi gaituzuna, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna: zeure bizia emonez, frutu ugari emoten dozuna, *erruki, Jauna*.

† Erruki dakigula Jainko guztiz ahaltsua, eta gure pekatuak parkaturik eroan gaizala betiko bizitzara.
—Amen.

**† Otoitza**

Jainko ahalguztidun errukitsua,
zeure indarra emon zeuntsan
Balendin martiri santuari
bere nekaldiko oinazeak jasateko;
emoiguzu zeure laguntza
haren garaipen-eguna ospatzen dihardugunoi
arerioen zirikaldietatik nagusi urten daigun.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan. —Amen.

**2 Ko 9, 6-10 (679)**

*Zelan jokatzen dogu Jainkoagaz? Geure beharrizanen arabera? Hau da: geuk behar dogunean deitzen deutsogu, edo eskeintzen deutsogu zeozer, edo joten dogu otoitzera? Begira ze aholku emoten deuskun Paulok.*

**San Paulo apostoluak Korintoarrei egindakotik**

Senideok: Urri ereiten dauanak, urri batuko dau; ugari ereiten dauanak, ugari batuko dau. Emon bei bakotxak, bere bihotzean erabagi dauan neurrian; ez triste, ezta behartuta ere, Jainkoak emoile leiala maite dau-eta.

Eta ahaltsua da Jaungoikoa, zuokan grazia guztiak ugaritzeko; guztietatik zeuontzat nahikoa dozuela, egintza on guztietarako ugari izan daizuen, idatzita dagoanez:

*«Zabaltzen deutse ta emoten behartsuei;*
*beti irautekoa da haren esku zabala»*.

Ereiteko hazia eta jateko ogia emoten dauanak, emongo deutsue hazia, ugarituko dau zuek ereindakoa, eta gehituko dauz ugari zuen maitasunezko emoitzak.

***Jaunak esana***

**Salmoa (Ps 111 / 679)**

*Jainkoaren bildur santuak hauxe esan nahi dau: besteentzako errukitsu izatea. Eta horixe goraldduko dogu salmo honek lagunduta.*




**R/. Zintzoen ondorengoa onetsia izango da**

Dohatsu, Jaunaren bildur dan gizakia,
haren aginduak oso maite dauzana.
Ahaltsu izango da lurrean haren hazia,
zintzoen ondorengoa onetsia. **R/.**

Zorionekoa, errukitu eta emon egiten dauan gizakia,
bere gauzak zuzen atontzen dauzana.
Ez da kili-kolo ibiliko behin ere,
haren gomuteak iraungo dau beti ere. **R/.**

Barri txarrak ez dau bildurtzen,
bizkor dau bihotza Jaunagan itxaroten.
Sendo dauka bihotza bildur gabe,
bere arerioak lotsaz ikusi arte. **R/.**

Zabaltzen deutse eta emoten behartsuei,
beti irautekoa da haren esku zabala,
ospez jagiko da haren ahalmena. **R/.**

**Ebanjelioa (Jn 12, 24-26 /679)**

*Kunplitu dogula Jainkoagaz, uste izaten dogu, mezatan egon garala-ta. Hori ete da Jainkoak gugandik nahi dauana?*

*Ez ete da beste hauxe: bere Semeari entzun deiogula, eta esku zabalez erantzun daigula? Horixe egin eban Balendinek. Egin deiogun harrera on bat ebanjelioari, Aleluia abestuz, zutunik.*

**Aleluia, aleluia, aleluia**

Nire atzetik datorrena, ez dabil ilunpetan;
bizirako argia izango dau —dino Jaunak.

**† Jesukristoren ebanjelioa san Joanen liburutik**

Aldi haretan, Jesusek honan esan eutsen bere ikasleei: «Bene-benetan dinotsuet: galgarua lurrean jausi eta hilten ez bada, bakarrik gelditzen da; baina hilten bada, garaua ugari emoten dau.

Bere bizia maite dauanak galdu egingo dau; eta bere bizia gorroto dauanak mundu honetan, betiko bizitzarako gordeko dau.

Nire zerbitzari izan nahi dauanak, jarraitu beist; eta ni nagoan tokian, hantxe izango da nire zerbitzaria ere. Nire zerbitzari egiten dana, goratu egingo dau nire Aitak.»

**Jaunak esana**

**HITZALDIA**

**Eskariak**

† Eleizearen zerbitzari izan zan Balendinen eskutik egin daiguzan gaurko eskariak:

*—Eleizearen alde: bere seme-alabek maite izan daien, zerbitzatu daien, eta sortu daitezan hainbeste behar diran bokazinoak, eskatzen deutsugu, Jauna.*

*—Eleiztarren alde: sinismena landu ta gaurkotu daien, eta beti bilatu daien Jainkoari eskuzabaltasunez erantzutea, eskatzen deutsugu, Jauna.*

*—Bizitza gero ta erosoago ta hobeago baten atzean gabizenok gure ingurura ere begiratu daigun, eta gogoan hartu daiguzan bizitza hobeago bat bilatzen gure artera*

*datozenak, eskatzen deutsugu, Jauna.*

*—Eukaristia hau ospatzeko alkartu garan guztion alde: Jainkoari non eta zelan entzun ikasi daigun, eta esker onezko erantzuna emon ahal izan deiogun, eskatzen deutsugu, Jauna.*

† *Alkarren zerbitzari nahi gaituzun Jainko Aita: san Balendinen* irakatsietan, egin gaizuz geu ere Eleizearen eta pobreen maitale ta zerbitzari gartsu. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

**Eskeintza**

Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa, zeure esku zabaletik hartu ditugu orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok, lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortuak: honeexek egingo jakuz biziaren ogi ta betiko zorionaren edari.
—Bedeinkatua zu, Jauna, orain eta beti.

Senideok: egin daigun otoitz, guztiok batean, Eleiza osoaren oparia Jaungoikoari eskeintzerakoan.
—Jainkoa goresteko eta gizakiak salbatzeko.

**† Oparien gainekoa**

Isuri egizu, Jauna, zeure bedeinkazinoa
gure emoitza honeen gainera;
zure maitasunak sutu gaizala,
maitasun horren indarrez garaitu zituan-eta
Balendin santuak bere gorputzeko oinazeak.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.   —Amen.

**Prefazioa**

**V./ Jauna zuekin**..........................R./ Eta zure espirituarekin.
**V./ Gora bihotzak**............................R./ Jaunagan daukaguz.

**V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari**.........R./ Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.

Martiri santuak goratzean Zeu goratzen zaitugulako
eta euren martiritzako sufrimentuetan
zure indarraren egintzak miresten doguzalako.
Zeuk emoten dozu bihotz onez fede gartsua,
Zeuk sendotzen iraupenean
eta garaipena emoten hilzorian,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.
Horregaitik, zeruko eta lurrekoek
kantu barria abestuz adoratzen zaitue;
eta geuk ere, aingeru guztiekin batean,
beti eta beti [esaten] abesten deutsugu:

**SANTU, SANTU, SANTUA**
diran guztien Jainko Jauna;
zeru-lurrak beterik daukaz zure distirak.
Hosanna, hosanna, hosanna zeru goienetan.
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena:
Hosanna, hosanna, hosanna zeru goienetan.

## III. EUKARISTI OTOITZA

Santu zara, bai, Jauna,
eta diran guztiek emoten deutsue behar dan gorespena.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez
eta Espiritu Santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen
eta Zeuk dihardu zu beti eta beti zeure herria batzen,
eguzkialde batetik besteraino opari garbia eskeini dakizun.

Apalik, beraz, Jauna, eskatzen deutsugu:
egin daizuzala santu, zeure Espirituaren indarrez,
oparitako ekarri ditugun ogi-ardao honeek,
zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren
Gorputz eta † Odol egin daitezan,
misterio honeek berak agindurik egiten ditugun ezkero.

Berak, saldu eben gau haretan,
ogia hartu eta, Zuri eskerrak emonez,
bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Era berean, afalondoan, kaliza harturik,
Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa.**

Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte, hau dogu, hau, barri ona!

Horregaitik, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi salbagarria eta hilen artetik biztea
eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrera itxaroten dogula,
Zuri eskerrak emoteko eskeintzen deutsugu
sakrifizio bizi eta santu hau.

Begira, Jauna, zeure Eleizearen eskeintza honi;
ikusi eskeintza honetan

Zurekin baketu gaituan Jesu Kristoren oparia;
egizu, Jauna, zure Semearen Gorputza eta Odola
hartzen ditugunok,
Espiritu Santuaz beterik, Jesu Kristogan
gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezala.

Berak egin gaizala Zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi daigun:
lehenengo, Maria guztiz dohatsua,
Jainkoaren Ama beti Birjinarekin,
haren senar Jose santuarekin,
zure Apostolu eta martiri santuekin,
**Balendin martiri** santuarekin eta santu guztiekin;
badakigu, honeen bitartez
zure laguntza izango doguna nonahi eta beti.
Gu Zurekin baketzen gaituan opari hau izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake eta salbamen.

Mundu honetako ibilaldian,
bete egizu sinismenez eta maitasunez zeure Eleizea:
zeure zerbitzari Frantzisko gure Aita Santua,
Joseba gure Gotzaina,
beste gotzain eta eleizgizon(-emakume) guztiak
eta zeurea dozun herri osoa.

Entzun, bihotz onez,
zeure aurrera deitu dozun familia honen otoitzak;
Aita guztiz ona, erakarri Zeugana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zeure seme-alabak.

† Hildako gure senideak (…),
eta mundu honetatik Zurekin adiskide joan diran guztiak,
hartu eizuz bihotz onez zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula betiko,
eurekin batean, Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez;
beronen eskuz emoten deutsazuz
ondasun guztiak munduari.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN
ZURI, AITA, JAUNGOIKO AHALGUZTIDUN HORRI
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN
OSPE TA AINTZA GUZTIA
GIZALDI TA GIZALDI GUZTIETAN.
—Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur
egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
eta ez gu tentaldira eroan,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik gabi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean, Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozala.

*- Zeurea dozu erregetza;*
*zeureak ospe ta indarra orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)
† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

*—Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
*—Eta zure espirituarekin.*

† Emon deiogun bakea alkarri.
—Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
—Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
—Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *emoiguzu bakea*

## JAUNARTZEA

† Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

- Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
  baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

### Jaunartzerako abestia

*Hona Bildots eztia / egiazko ogia*
*zerutik da jatsia / Jainko maitia.*

Gure artzain ona ta egilea
Aitarik maiteena, zeru-emoilea.

Ostian zaozala dogu sinisten
zeruan bezela hor gu maitatzen.

Zinez gurtzen zaitut, Jesus eztia.
Arren, emoidazu goi-sinistia.

**Otoitz**

Hartu dogun Eukaristiak indartu gaizala, Jauna,
Balendin martiri santua indartu eban lez,
bai zure zerbitzuan leial agertzeko,
bai bere nekaldian sendo irauteko.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.



**Azken onespena**

† Jauna zuekin.
*- Eta zure espirituarekin*

† Bedeinkatu zaizela Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak † eta Espiritu santuak.
*- Amen*.

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jaungoikoari.

---

**Jaunartzerako**

**R/. Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik;**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

[1] *Neu naz zerurik lurrera jatsi dan ogia*
*Aitak danori eskeinia.*

[2] *Nire gorputza egiz dozue janaria*
*ta nire odola edaria.*

[3] *Ogi hau jaten dauana beti da biziko,*
*hilterik ez dau ikusiko.*

[1.] Ogi hau jaten dauanak izango dau bizia.
Kaliz hontan aurkitzen da Jainko-odol guztia:
**R/. Hor dogu janaria ta hor gure edaria.**

[2.] Jaungoikoak deitzen gaitu: bera dogu janari.
Beragan dogu aurkitzen osasuna ugari.
**R/. Zelan begiratzen deutson Jainkoak gizonari!**

[3.] Danok gaur jaten badogu ogi bat mahai batean
ezin izan gorrotorik gaurtik gure artean.
**R/. Alkar maitatu dagigun Jesusen izenean.**

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguzti-dun be-ti - ko ho-rri. Mar-ti-ri santuak

goratzean Zeu goratzen zaitu-gu-la-ko eta hare-en martiritzako

sufrimentuetan zure indarraren egintzak miresten dogu-za-la-ko.

Zeuk emoten dozu bihotz onez fede gar-tsu-a, Zeuk sendotzen

iraupenean eta garaipena emoten hilzo - ri - an, Jesu Kristo

gu-re Jau-na-ren bi-tar-tez. Horregai-tik, zeruko eta lu-rre-ko-

ek, kantu barria abestuz adoratzen zai-tu-e; eta geuk ere, aingeru

guztiekin ba-te-ra, beti eta beti a-bes-ten deu-tsu-gu: